




# Jon Etxeandia
# GOGOAN

otsaila 8 igandea

**12:00 Bizkargi**

**19:00 Hori Bai Larrabetzu**

BURDIN-HARIAK ETA
PLASTIKOZKO KOILARAK

Gartzelari buruzko
gogoeta musikatua

Oier Gonzalez Markel
Ormazabal




literaturakoadernoak.org

## Zuek lore paper ederreko logelan

¿Merezi ote du bizia galtzea zuengatik,
lilitxoak eta ongi jatea maite duzuenongatik?'
Vladimir Maiakovski

Zuek, lore paper ederreko logelan
lo egiten duzuenok, zer senditzen duzue
gosalduala egunkaria leitzean?
Goardia zibilek hil dute mutil hura,
ihes zebilena, zuen atea jo zuena,
zuen etxera sartzeko lar arriskua zena.
Bart afaria egin zenuten kuadrilan
eta iraultzaren aldeko kantuak tomate
saltsaz zikinduriko zuen ezpainetan
zer erretolika penagarria!
Goizeko egunkari horrek nori ez dio
larritasuna sabelean lotu,
halaere mundua ez da hor gelditzen,
entrepresa ez dabil ondo,
prolema partikular ugari duzue,
egunkaria odola dariola beti diozue
eta gaizki gosaldurik zoazte bulegora.
Bizitza zuen moduko jendeagatik eman!
Hobe gau egunak edozein putaetxetan
limonada zerbitzen pasatzea.

**Joseba Sarrionandia**

Sigo escribiendo y me afano por transmitir mis sentimientos o por, modestamente, ejercitar la agitación y la propaganda, las formas comunicativas revolucionarias por excelencia.

Y pese a todo, es difícil imaginar en esta soledad el efecto que tendrá lo que se escribe, como difícil es explicar a los presos sociales que se acercan a mi ventana a pedirme tabaco y hacerme compañía que, pese a estar aquí tan solo y tener más de 100 años de condena, no estoy desesperado

## Esterminioa

Espainiako demokratek
ozenki diote
aquí ya no hay pena de muerte
eta bitartean
kartzeletako medikuek
mila kolorezko pastillez
preso gaisoak dituzte asetzen
...eta isolamendua
eta urrunera
eta gosea
eta ur hotza
eta munstroaren eskuetan
gaudela jakiteak...
gaur goziean zeldak irekitzean
sei urte zeraman preso
lagun baten gorpua
bilatu dute.

Euria ari du ametsen erresuma epelean
Zeldako hormetan sinboloek diraute
Neurgaitza gertatzen da denbora
mahai gaineko argazkiari so eginez

## Noiz maitaide

Itsasertzeko lilia zu,
ta ni
amets hautsien marinela,
irlarik irla errakor,
katibu.

Gaubetan izarrak,
gaur hitz eta loreak,
hauxe duzu momentuz
enekiko zurea.

Bihar izanen da bisita,
bizarra ondo ebakita,
pintxo jarri ta atera;
Aldez aurretik nekien
etorriko zinela.

Beti erretzen ditut zure eskutitzak
azkenekoa ezik.

Herriminez hiltzera doa arratsaldea.
Eta geroxeago, gaubean,
segurantzarik ez diguten eskeintzen
ur hauetan,
non kokatu gure ametsak?

Urria da penatuen zoriona
Berrogei ta bi egunetan zigorra
Bukatzean, ekonomatoan
madalenak erosteko baimena.
Urria da penatuen zoriona.

## Comboy Urgente, Dirección Destino Final

Egunsentirako,
labanak apurtzen du kukuloa
Hainbat izen deitura
goardia zibilaren paperetan
Ate hotsak
Huesca, Ocaña, Daroca-rako bidaiak,
errepdie, goitikin, trikornio ta kataiak.
Bihar nor?
Edonor.
Hau komeria,
destino berria:
Almeria.
Bihar ere zalantzaz
itzuliko da argia.
Dena da probisionala,
baina nolatan igarri
hemen dabilen
dialektika basatia?

## Presaka gabiltza

Gerrilero bilakaturiko
Etxauriko zurgin hori,
jo ezak,
jo Nikolas, jo!
Alboan laguna,
haruntzago Luzea.

Presaka gabiltza
eta bitartean
buruari galdezka
ze nolako poesia
egin behar den une hauetan
hiztegirik begiratzeke
idatzi eta irakurtzeko modukoa?

Momentu hau
poema epiko baten ahapaldia
herriak izkiraiuttako
etengabeko poeman kokatua
besterik ez da.

...Eta horrela, hemen nabil, garagardo batzuk edaten, kartzelako pasadizoak kontatzen, oroitzapen historikoa erreibindikatzen eta zuen presentzia eskatzen Euskal Herriko Prozesu Demokratikoan zeren, Sarrik idatzi zuen legez "*gu -pirata ingles harek esan zezakeen bezala- tolerantziarako eta taberna batetan edateko jaio gara. Eta euskal erresistentzian jarraitzeko ere jaio gara.*"

Besterik ez, aberkide maiteok. Preso guzti eta bakoitzari ene irripar zintzoa eta basarkadarik beroena bidali nahi nizkizueke, azken ziegaraino heltzeko asmoz. Zuena beti izango den marinel ijito abertzale honen partetik, osasuna eta askatasuna.

## Hora de la ceniza

Finaliza septiembre. Es hora de decirte
lo difícil que ha sido no morir.

Por ejemplo, esta tarde
tengo en las manos grises
libros hermosos que no entiendo,
no podría cantar aunque ha cesado ya la lluvia
y me cae sin motivo el recuerdo
del primer perro a quien amé cuando niño.

Desde ayer que te fuiste
hay humedad y frío hasta en la música.
Cuando yo muera,
sólo recordarán mi júbilo matutino y palpable,
mi bandera sin derecho a cansarse,
la concreta verdad que repartí desde el fuego,
el puño que hice unánime
con el clamor de piedra que exigió la esperanza.

Hace frío sin ti. Cuando yo muera,
cuando yo muera
dirán con buenas intenciones
que no supe llorar.
Ahora llueve de nuevo.
Nunca ha sido tan tarde a las siete menos cuarto
como hoy.

Siento deseos de reír
o de matarme.

**Roke Dalton**





# Jon Etxeandia Zorroza kamarada, laguna...

### Jon Etxeandia Zorroza
### (Bilbo, 1962ko abuztuaren 21a - Bilbo, 2010eko otsailaren 9a)
### ETAko kidea izan zen. 18 urte egin zituen Espainiako espetxeetan
### Artista, poeta, idazlea izan zen

Jon Etxeandia Bilboko Indautxu auzoan jaio eta bertan bizi izan zen. Edurne (Morga), eta Juan (Mungia) gurasoek hiru seme-alaba izan zituzten: Jon, Miren eta Javier. Taberna bat izan zuten Bilboko erdialdean, *American* taberna. Izen hori jarri zioten aita Amerikako Estatu Batuetan artzain ibili zelako. Jonek lotura berezia izan zuen amaren sorterriarekin, Morgarekin. Udaldi osoak ere bertan egiten zituen. Ikasketak Bilboko San Vicenteko eskolan hasi zituen, eta Trueba ikastetxean (Artxanda) jarraitu zuen. Handik, gero, etxekoen tabernan hasi zen lanean.

**ETAko kidea**

Gaztetan PC(m-l)ko erakunde komunistako gazterian jardun zuen. Gerora, 1983ko maiatzean atxilotu egin zuten, 21 urte zituela, eta poliziak ETAko "*Jose Marti*" taldeko kidea izatea leporatu zion. Espainiako poliziaren egoitzan inkomunikatuta torturatu egin zutela salatuko zuen. Hainbat banketxetan bonbak jartzea leporatu zioten [1]. Horietako batean, Bilboko Banco Vizcayako egoitzan bi langile hil ziren ETAk bonba bat jarri zuela abisatu eta lehergailua aztertzen ari zirela eztanda egin zienean [2]. ETAk egindako beste ekintza bateko informazioa biltzea ere leporatu zioten [3]. Guztira, 172 urteko espetxe zigorra sartu zioten. Inkomunikazio aldian, besteren artean, poliziek ETAk egindako

ekintza batzuen egileen artean Imanol Murua iheslaria zegoela sinatu arazi zioten. Gero Imanol Murua Frantzian atxilotu, Espainiara eramango zuten eta, azkenean, Espainiako tribunalek onartuko zuten akusazio hori faltsua zela [4].




**Espetxealdia**

Jon Etxeandiak Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren kontra diseinatutako espetxe politika bizi izan zuen espetxean. 18 urte eta hilabete bat egin zituen preso. Espainiako espetxe ugaritan izan zuten: Alcala-Meco, Herrera de la Mancha, Puerto de Santa Maria, Salto del Negro, Melilla, Malaga, Alacant... Gose grebak eta borrokaldi ugaritan parte hartu zuen giza-duintasuna mantendu, espetxeetako bizi baldintzak hobetu eta Euskal Herriaren askapen borrokari espetxetik laguntzeko. Tratu txarrak eta jipoiak jasan zituen espetxean. 1992. urtean Salto del Negro espetxean (Las Palmas. Kanariar Uharteak) jaso zituen jipoi eta jazarpenak salatu ziren EAEko Giza Eskubideen Batzordean [5].1995eko azaroaren 29an, Malagako espetxean, kartzelariek hainbat zauri eragin zizkioten buruan eta aurpegian eta besoa apurtu zioten [6]. Kartzelako bizimodu ankerrak, arazo psikologiko larriak eragin zizkion, eta hainbatetan arreta medikoa eta medikazioa ere ukatu egin zioten [7].

**Idazlea**

Gaztetatik ekin zion idazteari. Atxilotu zutenean poliziek idatziak kendu zizkiotela eta, horrela kontatu zuen poema batean:

**Lapurketa**

Zilegitzat nuen poemak idaztea,
baina mundu hau
ez dago kontu askotarako.
Ene poemak
poliziak kendu zizkidanean
komisarioak esan zuen
*el cuaderno de las chorradas*
desartikulaturik zegoela

Espetxean kazetaritza ikasi zuen, UPV-EHU unibertsitatean. Antzerki lanak antzezten jardun zuen Alcala-Mecon, artean euskal preso politikoak elkarrekin zeudenean. Euskal Preso Politikoen *Barrutik* aldizkariaren sustatzailea izan zen. Eta idazten jarraitu zuen, modu eta formatu ugaritan: gutunak, poemak, saiakerak, egunerokoak, testu politikoak... Garai horretan hainbat aldizkaritan argitaratutako literatura idatziak **Pabel Ortzantza** izenarekin sinatzen zituen.




**Berriro kalean, bizirik eta lanean**

Jon Etxeandia 18 urte eta hilabete bat espetxean egin ostean berriro irten zen kalera. 2001eko uztailaren 20an ongi etorri ekitaldia egin zioten Bilboko La Casilla plazan. Kalean berriro bizimodua antolatu eta Amnistiaren Aldeko Mugimenduan eta Ezker Abertzalearen mugimendu politikoan jardun zuen. GITE-IPESek bultzatutako San Frantziskoko gau eskolako euskara irakasle izan zen hil arte. Kukutza gaztetzean ibiltzen zen, Zazpi kaleetan, Bilbo zaharrean, Kafe Antzokian lanean... betiko lagunekin eta gazteekin. Moskotarrak konpartsako kidea izan zen [8].

Ekitaldi ugaritan parte hartzen zuen: presoen eta espetxeetako egoerak, espetxea eta literatura, langileria, nazioarteko borroka, baina batez ere Euskal Herriaren askatasunaren alde bizitza emandako gudariak zeramatzan barruan. Bizkargi egunean eta EAE-ANVk Albertian urtero egiten diren ekitaldian parte hartuko zuen falta gabe. [9].

**Ataramiñe**

Jon Etxeandia *Ataramiñe* elkarte eta argitaletxearen sortzaile eta partaidea izan zen hil arte. Presoekin harremanak lotu, idatziak bildu, editatu, argitaratu, aurkeztu eta zabaltzen jardun zuen. *Espetxea eta literaturari* buruzko hitzaldi franko ere eman zituen han eta hemen.

**Heriotza Bilbon**

47 urte zituenean hil zen etxean 2010eko otsailaren 9an [10] . Hurrengo egunean lagun eta preso ohi ugari bildu ziren tanatorioaren aurrean agur xume bat

egiteko [11] [12]. Kartzelan bizi izandako jazarpenek heriotzaren zerikusia zutela aipatu zuten bertan. Kartzelatik irten ondoren desoreka bipolarra diagnostikatu zioten, eta hainbat gorabehera ere izan zituen horren ondorioz.

**Omenaldiak**

2010eko martxoaren 13an omenaldi beroa egin zioten Bilboko La Casillan [13] [14] Jon ibilitako erakunde politiko, sozial, kulturalek eta lagun ugarik. Kafe Antzokian beste omenaldia egin zioten kultura, musika eta literaturaren aldeak nabarmenduz.

**Idazlanak**




→ **Kartzelako lanak.** Askatasunak 2002an argitaratu zuen. Liburuan Jon Etxeandiak kartzelan idatzitako hainbat testu biltzen dira, Juan Antonio Olagorta preso-ohiaren marrazkiekin batera [15].
→ **Gosea lagun, laguna.** Ataramiñek argitaratu zuen 2004. urtean. Eguneroko baten formarekin, eta bi presoren ekarpenak bata bestearen ostean tartekatuz, elkarrizketa sinboliko baten antzera, gose greba baten esperientzia eta bizipenak kontatzen da liburuan, hausnarketa eta gertakizun ugariren bitartez [16].
→ **Itzalpeko ahotsak.** Susa aldizkariaren 23-24 zenbakia. Kartzelako idatzien inguruko Susa aldizkariaren ale monografiko honetan, Jon Etxeandiaren hainbat poema jasotzen dira, Pabel Ortzantza izenpean [17].

**ARTIKULUA: http://eu.wikipedia.org/wiki/Jon_Etxeandia_Zorroza**